# Elikadura Burujabetza lantzen

VIII Kongresua
2012·XI·25
Gernika
www.ehnebizkaia.org



# Elikadura burujabetza lantzen

# 1- ELIKADURA BURUJABETZA ETA AGROEKOLOGIA

## A. EHNE-Bizkaiaren apustua ekonomia eta finantza ereduaren krisiaren aurrean

Ekonomia eta finantza ereduaren krisiak modu oso sakonean markatzen du bizi dugun kontestu orokorra. Elikadura krisiaren garaia izebergaren punta baino ez zen, ekonomia eta finantza erduaren porrotaren baitan. Egia da garapen eredu honen porrotak datu izugarriak azalarazten dituela nekazaritza ekoizpen guztietan, baina egia da, baita ere, eredu beraren aldeko apustuari eusten zaiola, orokorrean, botere publikoetatik. Proiektu alternatibo guztiek, ondorioz, konpromiso maila handia beharko dute, kontsumitzaileen eta gizartearen parte hartzea posible egingo duen zilegitasun maila batekin batera. Zentzu horretan, ekimen ezberdinen proposamenean are gehiago sakondu behar dugu, gizartearen babesa izango duen nekazaritzaren garapenerako proposamen politikoari forma emateko. Gure aportazio eta proposamenek ez badute interes sozialik, bidea laburra izango da.

Aurreko Kongresuan aurrerapausua eman genuen proposamen hauen inguruan. Ondorioz, gero eta hauskorragoa den egoera iraultzea posible egingo duten arloak lantzea proposatzen da.

Argi dago: garapenerako eta ekoizpenerako eredu guztien bateragarritasuna ez da erreala. EHNE-Bizkaiak elikadura burujabetza eta ekoizpen sostengarriaren aldeko apustua egiten du, agroekologiaren bidetik. Horretarako beharrezkoa da maila eta erritmo ezberdinetako prozesuak lantzea, etorkizun ahalik eta hurbilenean ekoizpenaren gehiengoa eredu sostengarrian kokatu ahal izateko. Guzti honek epe luzerako estrategia bat behar du, epe motz zein ertainean ongarritu beharko dena.

Beharrezkoa da egungo nekazaritza politiken aurrean posizioa markatzea, hasi nazioarteko mailatik (MME), europatik (NPB), eta baita maila erregional zein lokalean ere. Munduan gosea gehitzen ari da eta bien bitartean elikagai soberakinak daude, elikagai ekoizleak desagertzen ari dira, ekoizpen kostuak haditu eta errentak txikitzen dira... Egoera hauek modu pedagogikoan azaldu behar ditugu. Baina, batez ere, gure proposamenenen alde teoriko eta ideologikoa landu behar dugu; garapen sostengarriaren eta elikadura burujabetzaren bidetik lanean ari diren proiektuak bistaratu behar ditugu.

## B. Elikadura burujabetzatik proposamen politiko bat eraiki

Definizioz, elikadura burujabetza herrien eskubidea da:

- Elikagaien ekoizpenerako, banaketarako eta kontsumorako politika zein estrategia sostengarriak definitzeko.
- Populazio guztiarentzako elikadura eskubidea ziurtatzea, ekoizpen txiki eta ertainean oinarrituz.
- Baserritarren eta arrantzaleen kulturak eta dibertsitatea errespetatu, bai nekazaritza eta abeltzantzarako, bai arrantzarako, saltzeko edo inguru naturalak kudeatzeko; lan horretan emakumeen ezinbesteko papera bistaratuz eta



**EHNE-Bizkaiak elikadura burujabetza eta ekoizpen sostengarriaren aldeko apustua egiten du, agroekologiaren bidetik. Horrek erritmo eta eskala ezberdinetako prozesuen antolakuntza eskatzen ditu, ekoizpenaren gehiengoa sostengarritasun klabeetan kokatu dadin etorkizun ahalik eta hurbilenean.**



**Elikadura burujabetza ez da printzipio abstraktua. Azken urteetan ekoizpen, transformazio eta kontsumo lokalean oinarritutako proiektu asko abiatu dira. Salmenta zuzenak gardentasunez ikustarazten du elikadura burujabetza. Eta gehitu behar da elikadura burujabetza salmenta zuzena baino gehiago dela.**

garatu nahi diren espazioetan berdintasun erreala ezarriz.

Gizarteak, orokorrean, gure proposamenaren balio erantsia ezagutu behar du:

- Elikagaiz ornitu, kopuru eta kalitate nahikoan.
- Nekazaritza enplegua mantendu eta sortu, nekazaritza aktibitatera pertsona gehiago inkorporatuz.
- Maila lokaleko ekonomia berri baten parte izan, mugimendu espekulatzaileetatik at.
- Klima aldaketaren aurrean, planeta hozten lagundu.
- Ezagutza kulturalak eta baserritarren ezagutzak berreskuratu, gizarte osoaren mesedetan.
- Plan bat martxan ipintzea, Hegoaldeko komunitate pobretuetan gosea desagertarazteko.

Elikadura burujabetza ekoizpen eredu sostengarri baten da soilik posible. Nekazaritza sostengarria:

- Lurra eta lurraldeari lotua dago; tokian tokiko lurra eta klimari egokitzen zaio, bere aberastasun, errekurtso eta mugekin.
- Bertako arraza eta barietate motak lehenesten ditu.
- Oso ezberdina da toki batetik bestera. Dibertsitatea da bere ondare eta aberastasun nagusia.
- Autonomian dago bere balore eta botere nagusia:
    · Erabaki, agroindustriaren morroi izatea eragotzi.
    · Erabaki tekniko eta ekonomikoak hartu, ekoizteko sistema eraginkorreanak (ekonomoak) aukeratzeko.
    · Lana behar bezala ordaintzea lortu.
    · Politikoki behar den ekoizpenaren banaketa, ekonomikoki posible dela frogatu.

## C. MME eta elikadura burujabetza kontzeptu kontrajarriak dira

MME eta elikadura burujabetza kontzeptu kontrajarriak dira, oinarritik. Lehenaren helburua da pausuz pausu mundo mailako merkatu «librea» eraikitzea, baita nekazaritzan ere, ekoizpenak inongo traba barik leku batetik bestera eramateko eta kostua txikiena den gunean lokalizatzeko. Printzipio hau nazioarteko lanaren banaketan sartzen da: munduko gune bakoitza (edo ahal duena), besteak baino merkeago ekoizten duen sektore horretan espezializatzen da. Konpetizio honetan:

- Ikuspegi sozialak, finantzarioak edo ingurumenari lotuak ez du baliorik.
- Parez pare daude Europako edo Ipar Amerikako zeralista, makina handiekin 1.500 tona ekoizten dituena, eta tona bi ekoizten dituen afrikarra.
- Herrialde aberatsetako nekazaritza dago, laguntzatan 360.000 milloi jasotzen dituena, eta inongo laguntzarik jasotzen ez duen herrialde pobreetako nekazaritza ere badago.
- Aurrez aurre daude lurra traktoreekin lantzen duten 28 milloi baserritar, eta lurra ganaduaz lantzen duten 250 milloi baserritar.
- Talka egiten dute baserritarren %80ak, NPBren laguntzen %20a jasotzen dutenak, eta laguntzen %80a jasotzen duten baserritarren %20ak.
- «Aurka» daude 150.000-200.000 litro esne eta 800.000 edo milloi bat ekoizten dutenak.



**Landagune sostengarri baterantz bidea egin gura badugu, derrigorrezkoa da landagune hori osatzen duten pertsona guztiak berdintasun egoeran egotea, bai aukeren aldetik eta baita eskubideen aldetik ere.**

MMEak bultzatzen duen konpetizioa suntsitzailea da. Gehien komeni zaion nekazaritza, industriala eta intentsiboa da, sektoreka espezializatua, esportazioari bideratua. Ez da zaila ulertzen zergatik mundu mailako merkatuak, bere osotasunean, gusto eta forman uniformizatutako kopuru handiak behar dituen. Errealitate gordina da: 1.000 milloi pertsonak gosea pasatzen dute munduan eta horietatik bi heren baserritarrak dira. Europa eta AEBko nekazaritza politikek eragindako konpententzia nozitzen dute. Nekazaritzak ez du mundu mailako merkatuan sartu behar, merkatua izan behar da nekazaritzaren logika errespetatu behar duena. Ez da ahaztu behar nekazaritza elikadura dela eta elikadura eskubide negoziaezina da, han eta hemen.

## D. EBko Erregioen Komitea: Nekazaritza politika batek elikadura politika bat behar du

Bada pentsatzen duenik nekazaritza industrialak elikadura lokala ziurtatu dezakeela. Bide hau leku guztietan proposatu eta, hein batean, inposatu egin da. Diru eta logistika guztia bere alde izan du, eredu onena bezala onartua izan zedin. Nekazaritza mota honek, aplikatu den guneetan, bai Iparrean zein Hegoan, garapenaren ilusioa piztu du hasieran. Emaitza onak eskeini ditu produktibitateari dagokionez bere lehenengo urteetan. Baina mugak agertzen hasi dira: produktibitatea mugatu egin da, eraginkortasun ekonomikoa gutxitu edo galdu egin da, kanpoko gora beheren dependentzian erori da. Eta dependentzia ez da burujabetza.

Estrategia honen mugak instantzia ofizialetan ere ari dira nabaritzen. Urrun joan barik, Europar Batasunean, Erregioen Komiteak dokumentu bat landu zuen elikadura lokalari buruz. Azpimarratzekoak dira elikaduraren inguruan Europa mailako helburez dioena, zehazki baitio:

- Etorkizunean, nekazaritza eta elikaduraren horniketak gehiago aurreztu behar du ura eta erregai fosilak erabiltzerakoan, ongarri eta produktu kimiko gutxiago erabili, dibertsifikatuagoa eta inteligenteagoa izan behar du; abeltzaintza, hondakin organikoen kudeaketa, korronte erresidualak eta energia berriztagarrien ekoizpenak nekazaritzarekin izan ditzakeen sinergiak ahalik eta ondoen aprobetxatzeko.
- Ekoizleek ekoizten dutenarekin behar bezala bizi behar lukete, baina egungo sistemak ez du botere orekarik gordetzen banaketa katean, elikagaien prezioan eta behar diren etekin tarteetan.
- 2013tik aurrerako Nekazaritza Politika Bateratuak enpleguaren alde berrorekatu behar ditu laguntzak, nekazaritza Europan lurra lantzea posible den leku guztietan mantendu dadin, garrantzia berezia eskeiniz gune ahulei, hiriguneetako kanpoko lurraldeak barne.

Erregioen Komiteak garapenaren ardatz bezala kokatzen du elikadura lokala, bere onura ekonomiko, sozial eta ingurumenaren aldetikoak azpimarratuz estrategia honen inplantazioan. Era honetako baieztapenak azpimarratzea komeni da:

- Elikagai sistema lokalek laguntza bat suposatzen dute ekonomia erregional eta lokalarentzat, enplegua sortzen baitute nekazaritzan eta elikagaien ekoizpenean. Honek, prosezatzea, banaketa, komertzializazioa, salmentak eta zerbitzuak integratzen ditu.
- Diru etekinak maila lokalean gastatzen direnean maila lokalean ekoiztutako elikagaiak erosteko, etekin horiek inguruan geratzen dira eta biderkatze efektu handia (hiru bider gutxi gora behera) sortzen dute komunitateko errentan, ohiko zirkuitu komertzialekin alderatzen baldin badugu.
- Banaketarako bide laburrek kontsumitzaile eta

**Ekoizpen sostengarri eta iraunkorra izateko, lurra ezinbesteko baliabidea da. EHNE-Bizkaiak urteak daramatza lurrari babes juridikoa eman beharraren aldarria plazaratzen. Lur Bankua martxan jarri izana EHNE-Bizkaiaren lorpen bat da. Tresna badago, jada. Orain, helburua tresna hori eraginkorra izatea da.**



ekoizleen arteko interakzioa, ezagutza eta elkar ulertzea handitzen dute. Ekoizleak pertsonalki ezagutzean, konfidantzan oinarritutako erlazioak sortzen dira eta kontsumitzaileek produktuen berehalako trazabilitatea eskuratzeko aukera dute. Oinarrizko elikadura burujabetza maila bat ere eskeintzen dute banaketarako bide laburrek.

- Maila lokaleko merkaturatze markoetan, elikagai freskoak eskuratzeko erraztasunak osasun publiko hobe baten alde egiten du, elikadura erregimenak anitzagoak baitira eta elikagaien gaitasun organiko guztiak mantentzen baitira (merkaturatze bide luzeetan murriztu egiten dira gaitasun organiko horiek).
- Elikagai sistema lokalek onurak dakarzkiote ingurumenari, ekoizpen sistemak sostengarriagoak baitira, garraioan gutxiago gastatzen baita (elikagaiek egiten dituzten kilometroak), eta aukerak sortzen baitira hondakin organikoekin, bestelako hondakinekin eta energia berriztagarriekin sistema zirkularrak sortzeko.
- Gaur egun, elikagai sistema lokalak sistema ekonomiko zirkularrei lotu daitezke, eta baita erregio mailako beste erronka batzuei ere, hala nola hondakin organikoen kudeaketa, uraren kudeaketa, ekoizpen hondakinen –ura kasu- berrerabilketa, eta energia berriztagarriak.

## E. Elikadura burujabetza, NPB berri baten ardatza

Elikadura politika nekazaritza politikaren erdigunean txertatzetik abiatuz, berreskuratu egin behar da elikadura burujabetza NPBren ardatza izatea. Berreskuratu diogu, gogoan izan behar baita lehen hamarkadetan elikadura burujabetza Europan aplikatutako politika izan zela, bere nekazaritzan eta bere nekazarientzako. Europako Nekazaritza Politika 1960an aplikatu zen, hiru printzipio nagusitan oinarrituz:

1- Produktuen prezioek ziurtasun bat zuten, ekoizpen kostuak, gehiago edo gutxiako, gainditzen zituzten. Ondorioz, baserritarrek ekoizteko gogoa dute, bada bizitzarako perspektiba bat, nahiz eta egia izan herrialde guztietan perspektiba hori ez zela berdina.

2- Mugan berme bat zegoen inportazioen aurrean, bertako baserritarrek ez zezaten kalterik jasan mundu mailako merkatuaren aurrean. Bazegoen «baina» bat, mundu mailako merkatuko proteinek hasieratik izan baitzuten europako espazioan sartzeko aukera.

3- Logistika bat jarri zen martxan, ekoizpen gaitasuna garatzeko: ikerketa, teknika berriak, garapena eta formazioa. Emaitzak urte gutxiren buruan ikusi ziren.

Bere akatsak izan arren, Europak argi erakutsi du herrialde batek, bere elikadura burujabetza eskuratzeko lehen tresna kuadro politikoan duela eta gainontzekoak gehigarriak direla.

Politika honek 20 urteren buruan jaso zituen fruituak: elikagaiak falta izatetik nahikoa izatera pasatu zen eta



**Laguntzak ekoizle profesionalei zuzendu behar zaizkie. Gaur egun, NPBren laguntzak kobratzen dituzten hiru pertsonetatik bik, ezer gutxi dute ikustekorik ekoizpen sektoreekin.**

gero soberakinak izatera, bere ondorio guztiekin. Salbuespen bat bada: ekoizpen guztietan soberakinak egon dira baina proteina-landareen ekoizpenean defizita handituz joan da, argi geratuz aipatu printzipioak aplikatu ez diren sekotreetan ezin dela elikadura burujabetza lortu.

Ezaguna zaigu NPBren historiaren bigarren partea, 1992tik hona, bere oinarrizko printzipioak alboratu eta Munduko Merkataritza Erakundearen logikan sartzen hasi zenean.

Beharrezkoa da, beraz, elikagai ekoizle funtzioa berreskuratzea, agroindustriarentzako lehengai merkeen hornitzaile izan beharrean. NPBak prozesu hau errazteko, hauek dira ardatz nagusiak:

- Merkatuaren kontrolerako tresnak berreskuratu.
- Ekoizpenaren kontrolerako sistemak mantendu.
- Esportaziorako laguntzak galerazi.
- Ekoizpen kostuak beteko dituzten prezio sistemak, ekoizlearen lana kontuan hartuz.
- Ekoizle aktiboei zuzendutako laguntza sistema bat, muga zehatz eta eraginkorrekin, laguntzen konzentrazioa ekiditeko.

## F. Maila lokalean elikadura burujabetza edukiz bete

Elikadura burujabetza ez da printzipio abstraktua. Azken urteetan proiektu asko jarri dira martxan ekoizpen lokala, transformazioa eta kontsumo lokalaren inguruan. Salmenta zuzenak argi erakusten du zer den elikadura burujabetza. Eta gehitu behar da elikadura burujabetza salmeta zuzena baino haratago doala. Biztanleen konzentrazioa begi bistakoa den jendarte batean, beharrezkoa da transformaziorako eta komertzializaziorako estrukturak ekoizpen eta kontsumo lokalera bideratzea, helburuak nekazaritza ekonomia berlokalizatzea izan behar baitu. Argi dago helburutzat merkatu lokala izango duen transformaziorako industria bat behar dela.

Gure elikagaien ibilbidea eraginkortasun maila handienarekin antolatu behar dugu, hasi ekoizpenetik eta kontsumitzaileraino. Urteetan ari gara esaten ekoizpen eredu intentsiboak irteerarik gabeko bide batera garamatzala. EHNE-Bizkaiaren proposamenak konkretuak dira eta beharrezko tresnak eta neurriak martxan jartzea eskatzen dugu, izaera politikoz jantziak eta instituzioek ere (Udalak, Aldundia, Eusko Jaurlaritza) prozesu horretan lidertza hartuz. Eta ekoizleek ere pausuak eman behar dituzte bide horretan.

## G. Berdintasuna, eredu berri baten abiapuntua

Oraindik egiteko dauden lanak dira:

- Emakumeek eginiko lana egunerokotasunean ikustarazi.
- Euren izaera profesionala onartu.
- Euren parte hartzea handitu erabakiak hartzerakoan, bai euren aktibitatean eta baita elkarte mailan.
- Nekazaritza aktibitatetik eratorritako eskubide eta betebeharren errekonozimendua.

Elikagaien ekoizpenean, hasi ekoizpenetik eta familiarentzako jatekoa prestatu arte, emakumeen ekarpena onartzen du elikadura burujabetzaren printzipioak. Emakume eta gizonen artean ekoizpen faktoreen berdintasunezko berbanaketa ere plateantzen du, lurra eta ekoizpenerako laguntzen eta eskubideen banaketaren kasuan, esate baterako.

Landagune sostengarri baterantz bidea egin gura badugu, ezinbestekoa da osatzen duten pertsona guztiak berdintasun egoeran egotea, bai aukerei zein eskubideei dagokienean. Nekazaritza politiken markoan lana egin behar dugu, faktore ekonomiko, ekologiko, sozialak eta generoari dagozkionak modu integralean eta garrantzia berarekin landu daitezen.

# 2. NEKAZARITZA POLITIKA: LURRA. LAGUNTZAK. EKOIZPEN SEKTOREAK

## A. Lurrarentzako politika espezifikoa

Lurra ezinbesteko errekurtsoa da ekoizpen sostengarri eta iraunkorrerako. EHNEk urteak daramatza aldarrikatzen lurrak berariazko babes juridikoa behar duela, lurra kudeatzeko eta hobetzeko tresneria martxan jartzearekin batera. Zentzu horretan, Lurraldearen Antolamendurako Artezpideek (LAA) sektorearen defentsarako tresnak artikulatu behar dituzte, irizpide produktibista soilak alboratuz, nekazaritza aktibitatearen paper multifuntzionalari arrotzak baitzaizkio.

Lurren Bankua martxan jartzea EHNE-Bizkaiaren lorpena da, nahiz eta onartu beharra dagoen bere lana sinbolikoa dela. Tresna lortu dugu, baina eraginkorra izatea lortu behar dugu.

Oraindik ere, beharrezkoa da era honetako ekimenak martxan jartzea:

- Lurra behar bezala babestu beste erabilera batzuetatik.
- Erabilgarri dagoen lur publikoa identifikatu, erabilera sozialagoa emateko.
- Norbanakoen arteko mediazio lana, salerosketa eta errentak bultzatzeko.
- Pertsona nagusiek kudeatutako jarraipenik gabeko ustiategiei segimendua egin.
- Sektorean hasi nahi dutenei bide hori egiten lagundu.

## B. Baserritarrentzako laguntza publikoak

Gaur egun Europako nekazal politikako bateratuaren laguntzak (PAC) jasotzen dituzten hiru pertsonatik bik ez dute ezelango ikusirik baserri munduagaz. Maila lokalean ere, basogintza inguruko azpisektoreetan, nekazaritzaren inguruko profesionala izatea be ez da eskatzen laguntzok eskuratzeko.

Laguntza hauek batez ere, baserritar profesionalei bideratuak egon behar lukete. Neurri hau, besteak beste, nekazal sektorea indartu eta babestera bideratuko litzateke, lana sortuz eta baserri mundua bultzatuz. Eraberean, laguntzak banatzeko orduan, gehienezko topeak jartzea beharrezko ikusten dugu. Ez dugu laguntza gehiago aldarrikatzen, hobeto kudeatzea baizik.

## C. Ekoizpen sektoreak

<u>1. Abeltzantza: Behi eta ardi esnea. Okela</u>

<u>Oraingo menpekotasuna murriztu</u>

Gaur egun abeltzainek bizi duten menpekotasunarekin amaitzea guztiz premiazkoa da. Helburua, ekoizpen prozesuan ahalik eta eredu iraunkorrena erabiliz autonomia maila handiagoak eskuratzea da. Oraingo kanpoko bazka eta pentsuen erosketaren bidez, baserritarrek bizi duten dependentziak hondamendira darama sektore osoa. Autonomoagoak izateko, proposamen ezberdinak landuko ditugu:

- Beharrezko diren planak garatu behar ditugu, ahalik eta norbere bazka gehiago berreskuratzeko.
- Gaur egun oraindik badauden eredu onak ikustarazi eta hedatu behar ditugu, bai bazka edo forrajearen ekoizpenean zein mantenimenduan. Alpeetako adibidea bereziki interesgarria da.
- Gure kortetan, ganaduaren efikazia maila gorena eskuratu behar dugu, eta kanpotik erosten zaizkien elikagaietan, ekoizpen eta kontsumo harreman orekatua bilatu.
- Zerealak eta bazka lantzen dituzten nekazari eta ganaduzaleen arteko harreman zuzena sustatu behar dugu, merkatu espekulatzaileari aurre egin, eta modu eraginkor moduan.

<u>Transformazioa. Komertzializazioa. Prezioen behatokia</u>

Transformazioa eta komertzializazioaren aurrean erronka handiak ditugu. Gure helbururik garrantzitsuena, transformazio guneak sortzea da, ekoizpen lokala eta kontsumo lokala sustatzeko helburuarekin. Modu partehartzailean, baserri mundua bultzatzeko xedearekin.

Prezioen inguruan ere, erronka handiak ditugu begiau-



**Abeltzaintza sektoreak gaur egun bizi duten dependentzia egoeratik irten behar dira. Eredu sostengarriago bat artikulatu behar da, ekoizpen prozesuan autonomia maila handiagoa eskeiniko duena.**



**Transformazioa eta komertzializazioaren arloan erronka handia dugu. Gure helburua transformazio plantak garatzea da, lokalki ekoiztu lokalki kontsumitu ardatzaren inguruan eta sektoreak bultzatutako proiektu parte hartzaileetan oinarrituz. Elikagaien prezioen osaketa eta eboluzioa aztertzeko, beharrezkoa da tresna publiko eta gardenak ezartzea.**

rrean. Elikagaien prezioetan, hauek zelan eraikitzen diren erakusteko modu garden eta publikoak sustatu behar ditugu. Ekoizpen kostuak kontutan hartuz, garraioa, transformazioa, banaketa eta salmentarekin batera. EHNEk egin eta ezagutu dituen ikerketen arabera, ardi eta behi esnean honako hau litzateke salneurria definitzeko orduan proposatzen dugun banaketa: %45 ekoizlearentzat, %30 transformazio eta banaketarentzat eta &25 salmentarentzat. Gauzak horrela, behi esnea 0,40 eurotan salduko genuke, eta ardi esnea 1,20 eurotan.

Esne behiak

Oraindik Bizkaiko azpisektore garrantzitsuena da. Eraberan, Bizkaiak kontsumo potentzial itzela dauka. Baina oraindik Bizkaiko esne gehiena kanpora doan honetan, une aproposa da horri buruzko eztabaida bultzatzeko, Bizkaian ekoizten dugun esnea berton kontsumitu ahal izateko. Bide horretan, oso positibotzat jotzen ditugu Bizkaia eta Euskal Herria esnea bezalako ekimenak. Iparlat berriz, beste norabidean ari den ekoizpen eta garapen eredua da.

Artzantza

Gazta industria, eta bereziki Aldanondo bezalako enpresak, gazta egin edota esnea industriari ematen dioten artzainen lana eta biziraupena kaltetzen ari da. Esnea entregatzen dutenei, prezio lotsagarriak eskaintzeaz gain, ordainketetan atzerapenak eta batzuetan kobratu ere egin gabe geratzen dira artzainak. Modu berean, ekoizpenaren kontrolik ez dagoenez, Idiazabal markaren merkatua baliatuz, artzai gaztagileen kalterako diren ekoizpena bultzatzen dute.

Gauzak horrela, gazta industriak bere baldintzak ezarri eta inposatzen dituen bitartean, egoerari buelta ematea ez da erraza izango. Beste jatorrizko izendapen batzuetan ekoizpena kontrolatuta dago eta ez dago industriaren menpe, artzain eta ekoizle txikien esanetara baizik.

Alde horretatik Esnetik bezalako ekimen kolektiboen sorrerak ilusioa eta harrera ona piztu du inguruan. Gaztaiagaz batera, bestelako produktuak eskainiz eta etiketan darabilten gardentasuna, nortasun ikur bereizgarriak dira. Kooperatiba izaera berezia ere badu Esnetik ekimenak, ekoizleak eta kontsumitzaileak batzen dituen aldetik; etika, gardentasuna eta konfidantza bezalako baloreen lanketa pratikoak onurak baizik ez dizkio ekarriko. Eredu berri bat ezarri dezake behi eta ardi esnearen inguruko transformazio industria txikian.

Okela. Erralde

Okela munduarentzat (behi eta txahalak, bildotsak, txarriak) lehentasun nabarmena da hiltegi berri baten eraikuntza, Erralde proiektuaren garapen moduan. Durangoko hiltegiaren aldeko defentsa, lana eta borrokak, hiltegi berriaren beharezko oinarriak definitu dituzte. Elikadura burujabetzan oinarritutako banaketa eta hiltegi zerbitzua eskaintzea eta kolektibo ezberdinak elkarlanean lan egitea oinarri hartuta, herri mailako erakundeen -udalak- inplikazioarekin, egitea posible dela erakutsi dugu. Erronka nagusia Erralde berria egiten hasi eta martxan jartzea da.

## 2. Sagarra-Sagardoa-Txakolina

Sagarra-Sagardoa

Gure herrialdean ditugun baldintzak ikusita -eguraldia eta



**Kalitate politiken inguruan antolatutako estruktura guztia (J.I, Labela, marka zertifikatuak, Kalitatea fundazioa...) mehetu eta sinplifikatu egin behar da, efikazia eta sostengarritasun finantzarioaren bidean.**

lurra- sagardo sagarra lantzeko aproposa dela baieztatzea dagokigu, eredu agroekologiko eta iraunkorrak bultzatuz. Une honetan gainera, beharrezkoa zaigu -daukagun kontsumoa ikusita- sagar eta sagardo ekoizpena bultzatzea. Sagarrarenlaborantza egoki batek, prezio hobeekin, baserri askorentzako gehigarri aproposa ekarriko luke, egungo nekazal errentak hobetzeko aukera eskainiz.

Labelak, bertoko sagarrak erabiltzeko egin duen apustua aipatu behar dugu. Gaur egun, Euskal sagardoa da, bertoko sagardietako sagarrak direla ziurtatu eta zertifikatzen duen marka bakarra. Etorkizunean, sektorearen eskutik labelaren ordez jatorri izendapena bultzatu beharko litzateke.

<u>Txakolina</u>
Sektorearen garapena kontsumo lokalean, ekoizpenaren kontrolean eta hektareako ekoiztu beharreko mugak adostuta oinarritu beharko litzateke. Txakolinaren arrakasta eta boom honek, kontrol neurririk ez egoteak, eta merkatuaren benetako eskaera baino gehiago ekoizteak, datozen urteotan gertatu daitekenaren zantzuak adierazten dizkigute dagoeneko. Gehiegizko ekoizpenaren ondorioak bizitzen ari gara dagoeneko.

Iruzurra ekiditeko kontrol neurri zorrotzagoak, ekoizpen eskubideekin dagoen trapitxeoa debekatu eta txakolina zein mahatsaren prezioak ezartzeko eztabaidak guztiz beharrezkoak dira une honetan.

<u>Hortofrutikultura eta beste ekoizpenak</u>
Hortofrutikulturak (landare apaingarriak barne) guztietatik garrantzitsuena bada ere, gero eta garrantzia gehiago hartzen ari diren beste ekoizpen batzuk ere badaude. Landako arraultzak, kanpoan dauden txarriak, landare medizinalak, fruitu txikiak... Baserriko lanen dibertsifikazioa dakarten ekoizpenak dira edota baserri munduan lasaiago eta inbertsio handiegiak egin barik eskaitzen dutenak. Horrez gain, ogia eta mermeladak bezalako ekoizpen transformatuak. Gure inguruak oso baldintza agrologiko aproposak ditu horrelako jarduerak emateko.

<u>Kalitate politikak: Jatorrizko izendapenak, Labelak, marka zertifikatuak...</u>
Kalitate politiken zutabea Kalitatea Fundazioa da, nahiz eta Jatorrizko izendapen batzu, fundazio hori sortu aurretikoak diren. Kalitatea fundazioan batzen dira 15 label ezberdin (produktu bakoitzak label propioa dauka), marka zertifikatuak...

Sortu zeneko bi hamarkada hauetan, azpiegitura handi hau ez da batere eraginkorra izan baserritarrontzat, ez du beharrezkoa den balio erantsirik sortzen eta kalitatezko produktu moduan komertzializatzen den bolumena eta benetako ekoizpenaren artean ez dago neurriko ekilibriorik. EHNE-Bizkaiaren iritziz, beharrezkoa da aldaketa sakonak eragitea Kalitatea fundazioan eta bere antolaketa ereduan:

- -Kalitate politikek nekazaritza eredu iraunkorrarren babes eta garapenari erantzun behar diote
- -Ekoizleen partehartzea eta inplikazioa bultzatu behar da kalitate estrategien diseinu eta ezarpenean. (Euskal Sagardoaren dinamika eta partehartzea esanguratsua izan da, bide berri eta adibide on bat izan daiteke).
- -Ez da jasangarria horrenbeste marka -produktu bakoitzeko bat- eta Jatorrizko izendapen bat baino gehiago izatea produktuko. Erraztu egin behar da, eraginkorragoak izateko, eta produktu ezberdinak marka orokorragoen baitan batu behar dira.
- -Ekoizpen ereduan oinarritutako kalitate politika batek, labela Jatorrizko Izendapenetara bideratu beharko luke.
- -Beharrezkoa da kalitate politiken inguruan sortu diren egitura guzti hauek argaldu eta sinplifikatzea, eraginkorrago eta ekonomikoki jasangarriago izate aldera.



**Aktibitate berri batera inkorporatzerakoan, formazioa ezinbesteko elementua da. EHNE-Bizkaiak formazioaren aldeko apustua egiten jarraituko du, eredu aldaketa eta gazteen inkorporaziorako tresna gisa. Formazio agroekologiko eta baserritarra gure apustu bakarra izango da aurrerantzean ere, bai ideologia eta baita ekoizpenaren aldetik.**

# 3. FORMAKUNTZA. GAZTEAK. KONTSUMOA

### A. Baserri mundura pertsona gehiago sartzea formakuntzaren bidez

Gure ekoizpen eta giza sarea iraunarazi nahi badugu lehentasunezko helburua izan behar da. Are gehiago, nekazal jarduera lanpostuak sortzeko eremua izan daiteke, hortaz, gaur egungo egoeran, kontuan hartzeko moduko aldagaia da. Azken urteotan burututako lanak argi adierazten digu sarrera batek arrakasta izan dezan, bi aldagai kontuan hartu behar direla: alde batetik, sarrera era progresibo baten garatzea, eta bestetik, inbertsioa ahalik eta txikiena izatea. Jende asko hasierako laguntzekin liluratu egiten da, eta ondorioz behar duena baino instalazio handiagoa jartzen du.

Formakuntza osagai ezinbestekoa da edozein jardueratan hasteko unean. Ereduaren aldaketa gauzatzeko eta gero eta gazte gehiago nekazaritzan lanean has daitezen, EHNEk formakuntzan alde lanean jarraituko du. Formakuntza baita gure ustez, helburu horiek lortzeko tresnarik eraginkorrena. Formakuntza agroekologikoa eta baserritarra gure apostu nagusia da, bai ideologikoki eta baita produkzioari dagokionez ere. Gure erronka, ikastaroak, tailerrak, hitzaldiak, mintegiak, elkartrukeak... antolatzen jarraitzea izango da.

### B. Gertuko zirkuituak, lanpostu sortzaile

Komertzializazioan gertuko zirkuituen alde apostu egiteak, lanpostu berriak sortzen ditu, gazteak nekazaritzan aritzera bultzatzen ditu. Egunez egun lan horren emaitza ikusten ari gara. Tokian tokiko eraldaketarako azpiegiturak ezinbestekoak dira bide hauek bultzatzeko. Modu horretan, baserritarren lana optimizatzen dugulako eta euren produktuak bideratzeko aukerak hobetzen laguntzen ditugulako. Produktore, kontsumitzaile eta dendari txikien arteko harreman zuzenen bidez sare soziala indartzea lortzen dugu. Bide honi jarraituz, EHNE-Bizkaiak azoka eta merkatuen alde egiten du. Baserritarren tokian tokiko eta garaiko produktuak bertan egotea bermatu behar da.

Jantoki publikoak orokorrean, eta eskola jantokiak bereziki, gure lan eremu garrantzitsuak dira. Lehentasuna eman behar diegu espazio hauei. Bertan tokian tokiko produktuen erabilera bermatzea eskatu behar diegu botere publikoei. Elikaduraren kalitatea lehentasuna izan behar, eta baita eskolako jantokiek izan behar duten izaera hezitzailea ere. Honek guztiak nekazal aktiboen portzentaia handituko luke era adierazgarri baten. Jakin badakigu, ezinezkoa dela egun batetik bestera 180ºko aldaketa egitea, baina indar handiagoa egin behar dugu lan esparru hauetan.

Sindikatuak bultzatutako ekimenen artean Nekasarea sareak leku garrantzitsua bete du. Oinarri ideologiko sendoak dituen egitasmoa da, bai produkzio eredu berri baten garapenari dagokionez, eta baita giza arloan planteatzen duen eraldaketan ere. Ekimen hau oraindik ere gehiago garatzea eta indartzea gure helburuetako bat izan behar da. Horretarako ezinbestekoa da komunikazioaren arloan aurrerapausoak ematea eta proiektuaren bisibilidadea hobetzea. Nahitaezko baldintzak dira egitasmoaren sinesgarritasuna mantendu eta igotzeko.




**EHNE-Bizkaiak elikadura burujabetzaren inguruan maila lokalean zein munduan antolatzen diren ekimenei buruz informatzen jarraituko du. Baserri Biziak, idatzia zein digitalak, bestelako konplementuak izango ditu, izan eztabaidak, hitzaldiak edo ekitaldiak, elikadura burujabetza sozializatzeko helburuarekin.**

# 4. KOMUNIKAZIOA. ALIANTZA SOZIALAK: ESPARRU SINDIKALA ETA HERRI MUGIMENDUAK. BANKA ETIKOA. UNIBERTSITATEA

### A. Baserri Bizia. Elikadura burujabetza ikusgarriago egiten

EHNE-Bizkaiak elikadura burujabetzaren inguruan sortzen diren ekimen, mugimendu eta gertaera guztien gainean informatzen eta komunikatzen jarraituko du. Euskal Herrian bezala, mundu mailakoak.

Baserri Bizia proiektu komunikatiboan lekua izango dute elikadura burujabetzaren alde, nekazaritza iraunkorraren inguruan eta agroekologiaren bidean lanean ari diren Euskal Herriko eragile sozial, herri ekimen, elkarteak, kontsumo talde eta sindikatuek.

Hemendik aurrera, orain arteko bi zutabe nagusiez gain, alor berrietan ere murgilduko dugu Baserri Bizia proiektua. Paperezko aldizkaria (2012ko azaroan argitaratu dugu 35. zenbakia) eta atari digitala ( www.baserribizia.info )lantzen jarraitu eta espazio sozialari garrantzia gehiago emango diogu. Eztabaidak antolatuz, hitzaldiak, ikusentzunezko emanaldiak, dastaketak eta bestelako ekimenekin batera, elikadura burujabetzaren inguruko ideiak eta proiektuak gizarteratzea izango da gure helburua.

Beraz gure proiektu komunikatiboak hiru ardatz izango ditu aurrerantzean: espazio soziala (jendaurreko ekitaldi eta eztabaidak), espazio fisikoa (idatzizko aldizkaria, dokumentalak, argitalpenak…) eta espazio digitala (baserribizia.info, asteroko buletina, sare sozialak…).

EHNE-Bizkaiak eraberean, www.ehnebizkaia.org ataria elikatzen jarraituko dugu, erakundeari buruzko informazioarekin, eskaintzen ditugun zebitzuak eta afliazioarekin hartuemanetan jarraitzeko.

### B. Sindikatu eta herri mugimenduekin harremanak

EHNE-Bizkaiak planteatzen duen nekazaritza eredua sustengatu eta gizartearen aurrean indartzeko orduan, jendartean harreman sare sendoa eraikitzea funtsezkoa da, oso lan garrantzitsua. Eta gizarte mugimenduetatik zein sindikatuetatik orohar oso ondo baloratua dago egiten dugun lana. Soslai hori mantentzen jarraitu behar dugu, eta eraiki ditugun guneak indartu. Orain arte egindako bidearen ildotik jarraituz, lortutakoari eutsi eta nekazal jardueraren defentsari ildo estrategikoa eskaini eta elikadura burujabetzaren aldeko jarduera landu behar dugu eragile guztiekin. Zentzu horretan espazio sindikala (ELB, ELA, LAB, ESK, STEE EILAS, HIRU, EGAS,…) eta herri mugimenduarekin sortutako guneak edukiz jantzi behar ditugu. Gure helburua, elkarren arteko mezuetan sektorea aipatzea baino urrunago joatea da, eta gure presentzia areagotuz, paper estrategikoa eskaini behar diogu nekazaritzari eta elikadura burujabetzaren defentsari.

Aliantza sozial iraunkor baten eraikuntza funtsezkoa izango da EHNE-Bizkaiarentzat, Euskal Herriaren eraikuntzarako bidean, nekazal mundutik bertatik. Horretarako, zereginen argipena eta barne mailako antolakuntzan behar diren egokitzapen eta indarrak bideratzea izango da garrantzitsua.

EHNE-Bizkaia jakitun da Euskal Herriak Estatu espainiar eta frantsesarekin bizi duen gatazka politikoa gainditzeko egun den aukeraz. EHNE-Bizkaiak bere egiten ditu Gernika eta Aieteko akordioak. Sindikatuaren ustez, beharrezkoa da Estatuek legaltasuna errespetatzea eta presoak Euskal Herriratzea.




**Mugimendu sozial eta sindikalek, orokorrean, positiboki baloratzen dute EHNE-Bizkaiak espazio komunak bilatzeko egiten duen lana. Aliantza sendo bat da sindikatuak behar duen oinarria, Euskal Herria nekazaritza sektoretik eraikitzeko bere aportazioa egin ahal izateko.**

Jendartearen osotasunaren inplikazioaren bitartez ziurtatu behar da herri eraikuntzan eta justizian oinarritutako beste eredu ekonomiko eta sozial baten eraikuntzan helburu duen prozesu berri honen arrakasta. Hurrengo belaunaldiei zor diegu, eta gure aportazioa egiten jarraitu behar dugu bide horretan.

### C. Europa mailako kredito kooperatiba alternatiboa

EHNE-Bizkaiak elikagaien ekoizpenean zein kontsumoan norabide batean lan egiten duen moduan, harreman finantzieroetan ere alternatiba eraldatzaileen beharraz jabetuta gaude. Gure helburua tresna hauek nekazaritza iraunkorraren zerbituza jartzea da, elikadura burujabetzaren printzipioen defentsan.

Alde horretatik, eta gogoeta horren ondorioz, badaramatzagu 3 urte orpoz orpo lanean beste eragile batzuekaz batera, FIARE fundazioaren baitan benetako alternatiba finantzieroa sortzeko eraikuntza tekniko eta sozialean. EHNE-Bizkaia gainera, Fiareko patronatuan dago.

Azken urte guzti hauetan FiIAREk egindako lanak argia ikusiko du datorren urte erdialdean (2013ko ekainean), Europa mailako lehen kreditu kooperatiba etiko eta alternatiboa martxan jartzean. Estatu mailako proiektuak Italiako Banca Poppolare Eticarekin bat egitean.

Gaur egun FIAREk Hego Euskal Herrian funtzionatzen badu ere, Europako kooperatiba sortzean, edozein bankuk dituen zerbitzu guztiak eskaini ahal izango ditu.

### D. Unibertsitatearekin harreman esparru estrategikoa

Azken hiru urteotan, EHNE-Bizkaiak La Via Campesinarekin batera, Euskal Herriko Unibertsitatearekin modu antolatu eta kordinatuan lanean dihardu, batipat HEGOA institutoarekin (EHU UPVko Garapenerako politika publikoen eta nazioarteko kooperaziorako ikerketa institutoa). Helburu argia du elkarlan honek, nekazal eta baserri mundua eta unibertsitatearen arteko harreman esparrua eraikitzea, elkarlanean aritu eta Euskal Herriko zein nazioartean eragiteko.

Harreman eta lan hauen ondorioz, baserritarren erakundeen eta bere kideen azterketa eta gogoetarako gaitasunean eragin gura dugu, eta horrela botere egitura eta agenda politikoan eragiteko ahalmena areagotuz.

Datozen hilabete eta urteotarako erronka argia daukagu begi aurrean: elikadura burujabetza, agroekologia eta nekazaritza iraunkorra euskal unibertsitatearen baitan ezartzea. Ildo horretatik, gaur egun lanean ari gara EHNE-Bizkaia eta unibertsitatearen artean komenio bat sinatzeko, gure hartuemonen oinarri estrategiko gisa.

Eraberean Udako Euskal Unibertsitatean ere (UEU) hartuemonak landu eta ikastaro partehartzaileak antolatzen hasita gaude.



# 5. EHNE BIZKAIAREN BARNE ANTOLAKETA

**EHNE-Bizkaia COAG eta VIA CAMPESINAn**

Aurreko Kongresuan (2010eko otsailean) antolaketari dagokionez fase bat amaitzen ari zela eta berri bat hastear zegoela somatzen hasi ginen. Ordutik hona izandako gertaerek hala egiaztatu dute. Antolakuntzan hartutako erabakiek oinarri argia izan dute: nekazal sektoretik eta elikadura burujabetzatik Euskal Herria eraiki nahi du EHNE-Bizkaiak. EHNE-Konfederaziotik atera ondoren, COAG eta Via Campesinan partehartze zuzena izango genuela finkatu genuen.

**Etxalde mugimendua Euskal Herrian**

Etxalde mugimendua karakterizatu eta martxan jarri genuen Euskal Herri mailan. Era berean, elikadura burujabetzaren aldeko aliantza soziala artikulatzen ari gara. Bi gertaera hauek, eztabaida eta sozializazio prozesu bat abiatu zuten. Nekazaritza eta elikadura krisiari konponbidea emateko, elikadura burujabetza aldaketarako motore izatearen beharra azpimarratzen du eztabaida horrek. Etxalde mugimendua pertsonez osatua dago, baina EHNE Bizkairako ezinbestekoa da elikadura burujabetzaren defentsan Euskal Herri mailako mugimendu bat artikulatzea. Etxaldek, norabide horretan doazen dinamika guztiak bateratu behar dituela uste dugu. Etorkizuneko antolaketa modua eremu honetan garatzen dugun lan amankomunak zehaztuko du. EHNE-Bizkaiarentzat lehentasuna da Euskal Herri mailako antolakuntza espazio baterantz bidea egitea, elikadura burujabetza izanik aldaketaren motorea, nekazaritza eta elikadura krisiaren konponbidea. Sindikatuak lan ildo hau indartuko du ELB, EHNE-Gipuzkoa, EHNE-Nafarroa eta Arabako UAGArekin. Elikadura burujabetzaren aldeko aliantza soziala gure lehentasuna da.

**EHNE-Bizkaia: Herrialde kontseilu zabalago eta erabakitzailea indartuz**

Oraingo egoerari modurik eraginkorrenean erantzuteko helburuagaz, EHNE-Bizkaiak bere funtzionamendua eta antolaketa eredua egokitu behar ditu. Horretarako Herrialdeko kontseilua indartzea proposatzen da, bai jende kopuru aldetik zein maiztasunetik ere. Herrialde kontseilua urtero gitxienez 10 aldiz batzea proposatzen da, eta esparru honetan hartzea estrategia berriak behar dituen erabakiak. Ondorioz bertan lagun gehiagok parte hartzea bultzatuko da, bataz beste hilero 35/40 lagunek parte hartu dezaten, eta parte hartzeari mugarik jarri barik. Ez da bestelako egitura aldaketarik proposatzen, soilik Herrialde kontseilua bera indartzea eta eraginkorragoa egitea. Datozen urteotan izango diren aldaketa eta egoera berriak lantzeko funtsezko

**EHNE-Bizkaiak beharrezko ikusten du finantzen bitartekaritzan alternatiba eraldatzaileekin kontatzea. Hiru urte daramatzagu finatzen inguruko alternatiba erreala eraikitzen, Fiare Fundazioaren baitan.**

**EHNE-Bizkaiarentzat lehentasuna da Euskal Herri mailako antolakuntza espazio baterantz bidea egitea, elikadura burujabetza izanik aldaketaren motorea, nekazaritza eta elikadura krisiaren konponbidea. Sindikatuak lan ildo hau indartuko du ELB, EHNE-Gipuzkoa, EHNE-Nafarroa eta Arabako UAGArekin.**




tresna bilakatzea da helburua.

Sindikatuaren ejekutibari dagokionez, bere funtzioa batez ere ejekuzioa izatea da. Erabaki gunea Kontseilua izanik, ejekutibak hamabostean behin batzarra egin eta kanpo mailako komunikazioa bozeramaileen bitartez egin eta kargu pertsonalak kenduz (presidentea eta idazkari orokorra). Ejekutibarako proposatzen den pertsona kopurua 6/8koa da eta lagun gehiagoren partehartzera irekia (2/4).

Herrialde kontseilua eta ejekutibaren arteko proposamen hau harremanean oinarrituta dago, zuzendaritza ardura hartuko luke kontseiuluak eta ejekutibak erabakiok gauzatu eta eguneroko lana dinamizatuko luke.

Azkenik, EHNE-Bizkaiak behar beharrezkoa ikusten du lantalde tekniko kualifikatu eta militantea izatea, EHNE-Bizkaiaren proiektu sindikalarekin konpromeituta izango dena. Erakundearen baitan etengabe proposamenak egin eta berrituz, dagokion arduretan lanak aurrera eroanez. Horretarako ere, etengabeko formakuntza beharrezkoa izango da.




**EHNE-Bizkaia jakitun da Euskal Herriak Estatu espainiar eta frantsesarekin bizi duen gatazka politikoa gainditzeko egun den aukeraz. EHNE-Bizkaiak bere egiten ditu Gernika eta Aieteko akordioak. Sindikatuaren ustez, beharrezkoa da Estatuek legaltasuna errespetatzea eta presoak Euskal Herriratzea. Jendartearen osoaren inplikazioaren bitartez ziurtatu behar da herri eraikuntza eta justizian oinarritutako beste eredu ekonomiko eta sozial baten eraikuntza helburu duen prozesu berri honen arrakasta. Hurrengo belaunaldiei zor diegu, eta gure aportazioa egiten jarraitu behar dugu bide horretan.**

## ERANSKINA

EHNE-Bizkaiak ponentzia honetan aipatutako arlo askotan sakondu du, kontsultarako materiale ezberdinak sortuz:

- «Merkaturatze bide laburrak Euskal Herrian» EHNE-Bizkaiak idatzia eta Mundubat fundazioak argitaratua 2012ko ekainean.

- «Ordeñando Alternativas» EHNE-Bizkaiak Mugarik Gabeko Albaitariak eta Ekologistak Martxanekin batera argitaratua, 2012ko otsailean.

- «Agoekologia: beharrezko eredua» EHNE-Bizkaiak argitaratua 2012ko urtarrilean.

- «Mujeres Baserritarras, la sabiduría de la tierra», ikusentzunezkoa, EHNE Bizkaiak argitaratua 2011n.

- «Eliadura Burujabetza Euskal Herrian eta Munduan» Etxalde-Nekazariza Iraunkorra mugimenduak 2011ko urrian argitaratua.

- «Elikadura burujabetzatik alternatiba bat gizarte osoarentzat» Etxalde-Nekazaritza Iraunkorra mugimenduak 2011ko urrian argitaratua.

- «Nekazaritza Politika Bateratua. EHNE-Bizkaiaren posizioa» sindikatuak 2011ko urrian argitaratua.

- «GURE LURRA, GURE ETORKIZUNA» ikusentzutekoa Bizilur elkartea eta EHNE-Bizkaiaren artean 2011 eta 2012 urteetan egina.

- «Documento que recoge el análisis europeo, estatal y local sobre POLITICAS PUBLICAS PARA LA SOBERANIA ALIMENTARIA» Emaús Fundación Social, Mugarik Gabeko Albaitariak eta EHNE-Bizkaiak 2011an argitaratutako lana.